# LAGUNGARRIAK

## Sarrera-oharra

Ondo etorri, senideok, Urtean Zeharreko 24. domeka honetako Liturgia ospatzera.

Erantzun errezik ez daukan galdera bat egingo jaku: *Zer edo Nor da Jesus niretzat?* Eta gaur iragarriko jakun Jainkoaren berbeak erantzun baliokoa gauzatzen lagunduko deusku, Jesusen jarraitzaile zintzoak izatea bilatzen badogu, behintzat.

## Sarrera abestia

*Abesti honek Jesusenganako autortza egiten lagunduko deusku. Gure bizitza Jesusengan oinarritua dagoala esaten dogu*.

**ZU GABE, JESUS, NORA** joango gara gu?
Zuk betiko bizitzako hitzak, Jauna, dituzu.

[1] *Zu gure maisu zaitugu, zu gure gidari*
*zure hitza guretzat indar eta argi.*

[2] *Maitasunezkoa dogu, Jauna, zure hitza*
*Zu zaitugu egia, bidea, bizia!*

## Damu-otoitza

Jesusen jarraitzaile zintzoak izateko asmotan joten dogu Jainkoaren errukira:

—Jesus Jauna, Jainkoaren izantasuna agertzen deuskuzuna, *erruki, Jauna*.

—Jesus Jauna, gure usteetatik atara gura gaituzuna, *Kristo, erruki*.

—Jesus Jauna, zeure ikasle izatera deitzen gaituzuna, *erruki, Jauna*.

## Is 50, 5-9a

Zelango sendotasuna erakusten dauan, Jainkoaren entzule izanik, bizitza eta eginkizuna harengan oinarritzen dauzanak! Hau da bilatzen doguna?

## Erantzun salmoa

Sinistunak badau Jainkoaren egintzen barri, eta horixe da esker onez iragarten dauana.




**St 2, 14-18**

Sinismenari buruzko erratuak eta usteak zuzentzera jatorkuz Santiagoren berbok.

**Mk 8, 27-35**

Zelangoak gura gaitu Jesusek? Galdera honexek eroan gaizala gaurko ebanjelioa entzutera. Egin deiogun harrerea Aleluia abestuz, zutunik.

**ESKARIAK**

† Jainkoaren seme-alaba izan gura dogulako zuzentzen deutsoguz eskariok gure Aita-Ama dogun Jainkoari:

—Eleizearen alde: iragarri deion gaurko gizakiari Jesusek bere egintzetan gauzatzen dauan Jainkoaren aurpegia, *egin daigun otoitz*.

**Jauna: zeugan dogu uste ona!**

—Behartsuen alde: lehentasuna izan daien Jesusen jarraitzaile izan gura dogunon egunerokoan, *egin daigun otoitz*.

—Astinduak izan diralako-edo, gogorkeriara edo besteak aurreran erabiltera joten dabenek Jesus Jaunagaz egin daien topo, eta honen antzeko izatea bilatu daien, *egin daigun otoitz*.

—Gu guztion alde: ustezko sinismen bizikerea itzi, eta Jesusen bila benetan jardun daigun, Jainkoaren hitzean eta eguneroko ekintzetan, *egin daigun otoitz*.

† Jainko ona: egin deuskuzun sinismen-erregalu hau egunerokoan jakin daigula eskertzen eta agertzen. Jesu Kristo gure Jaunaren bitartez.

—Amen.

**Jaunartzean**

**Hemen gaituzu, Jauna**, ogiaren eske,
bizi behar honetan ahuldu bait gintezke.
Zure gorputz santua hartu nahi genduke:
zu barik bizitzerik ezingo genduke.

Munduak behar badau eguzki-argia,
mendiko abereak, iturri garbia;
besteok nahi badogu barruko bizia
beharrezkoa jaku zeruko ogia.

Jauna, zure grazia lagun dakigula,
ogi hau jan dagigun behar dan bezela;
Ez ahaztu txarrerako jarriak gaozela:
arren, zuzen ta leial bizi gaitezela.

## Amaieran

Jesus nor eta zer dodan jakin gura badot ebanjeliora eta Jainko esperientziara jo behar izango dot, eta, egunerokoan, lotsa eta bildur barik gauzatzen dodala ikusiko dot. Otoitzak lagundu deidala.

**JESUS MUNDUKO ARGIA**
**Jesus zinezko egia. Jesus betiko bizia.**

[1] *Jesus Jainko gizona Zuri gure bizia*
*hartu gure Jaun ona gu garean guztia.*

[2] *Gure bihotz barruan biztu zure argia*
*gaitezen gu munduan argi Jainkoz betia.*